


# <u>OHARRA</u>

Joan den apirilaren 16an, EPPKren eta Harremanetarako Nazioarteko Taldearen arteko bilera egin zen Frantziako Paris inguruko Réauko (Seine et Marne) kartzelan.

EPPKaren aldetik Mikel Albisu Iriarte eta Marixol Iparragirre Guenetxea izan ziren ordezkariak eta HNTren aldetik Pierre Hazan.

HNTren bigarren partaide batek ere parte hartu behar zuen bilera horretan, baina kartzelako agintariek sartzea debekatu eta atarian utzi zuten urteetan Interpoleko buru izan eta oraindik ere ohorezko lehendakari den Ray Kendall.

Kolektiboaren aurkezpena xehea egin zitzaion HNTri : Kolektiboaren bilakaera historikoa, gaur egungo osaketa eta antolaketa, euskal preso politikoei Estatu frantses eta espainiarrak ezarritako neurri zorrotzen eta horien ondorioen azalpena eta EPPKren hausnarketaren berri ere eman zitzaion.

Euskal Herrian abian den egoera politiko berriarekiko Kolektiboak egiten duen irakurketa positiboa eta bateratzailea ezagutu ahal izan zuen zuzen-zuzenean HNTko ordezkariak. Herritarren bultzadaren indarraz oso kontziente, kontrako jarrera kritikatu zuten EPPKako mintzakideek. Eta, hartara Estatuen aldetik Kolektiboaren eta prozesuaren aurka dagoen blokeo eta jazarpenaren aurreko kezka ere helarazi zioten.

HNTko ordezkariak Euskal Herrian irekitako prozesuan bere taldea presente egon den neurrian, beren irakurketa aurkeztu zien EPPKren mintzakideei.

EPPKk, aurrera begira zer asmo dituen ere jakinarazi zion HNTri. Alegia, kontziente izanik konponbide-prozesua kartzeletan lokaztu nahi dutela egoera desblokeatzeko urratsak egiten jarraituko duela adierazi zuen. Gaur egun, Kolektiboa sakabanaketarekin amaitu eta preso politikoak Euskal Herriratzea helburu duen ekimenean murgilduta dagoela jakinarazi zitzaion. Zeregin horretan HNTri eman dezakeen laguntza eskatuz.

**EPPK**

Euskal Herria bihotzean, 2014ko ekainaren 30a